Azken aldiz Euskal Herrian izan ginenean Herrirako 18 kideen aurkako atxiloketa burutu zuen Espainiako Poliziak eta 76 pertsona eta 101 herriko tabernen aurkako epaiketa politikoa hasi berria zen Audientzia Nazionalean. Urria zen. Gaur, urtarrila, lau hilabete beranduago EPPKko bitartekarien atxiloketa eta urteroko euskal preso eta ihelarien aldeko manifestazioaren debekuarekin topatzen gara. Egoera gehiegi aldatu ez denaren seinale.

Batzuen aldetik urratsak eman badira ere, euskal preso politikoek beraien oinarrizko eskubideak urratzen dituen espetxe politika ankerra pairatzen jarraitzen dute, munduko bazter ezberdinetan ehunka iheslariri beraien herrian libre bizitzeko eskubidea ukatzen diete, eta berriz ere, jardun politikoa burutzeagatik hainbat herritar epaituak dira.

Urrian egin bezala, Estatu Espainolaren errepresio estrategia salatu beharrean aurkitzen gara beste behin ere. Konponbidearen aldeko apustu egin eta egunez egun konpromisoak hartzen dituen herriaren aurrean atxiloketa eta debekuekin erantzuten jarraitzen baitu. Jarrera honek argi erakusten du ez duela konponbiderik nahi, ez zaiola interesatzen.

Horregatik gaude gaur gu ere hemen, Bilbon. Toritonik, Napolitik, Madriletik, Andaluziatik, Valentziatik, Aragoitik etorritako kideok Euskal Herriak giza eskubideen, konponbidearen eta bakearen alde eginiko apustuarekin bat egiten dugulako gu ere mobilizatu egingo gara. Baina gure konpromisoan urrats berri bat eman nahi dugu. Euskal Herriak bizi duen errealitatea gure herrietara eraman nahi dugu eta lehen eskutik erakutsi herri aske baten aldeko borrokan pairatutako jazarpen etengabea.

Horretarako, Euskal Herriaren Lagunak sareak eta Askapenak elkarlanean Euskal Herriarekiko Nazioarteko VIII. Astea antolatu dugu. Aste hau apirilaren 4tik 13ra gauzatuko da “Errepresioaren aurrean, Gora Euskal Herria Askatuta” lelopean. Data hurbildu hala aste horretako ekimen eta deialdi ezberdinen inguruan informazioa luzatzen joango gara. Herrion arteko elkartasun eta konpromisoak indartzen gaituelako

Gora Euskal Herria Askatuta!

Gora Euskal Herria Internazionalista!



Era octubre cuando 18 personas fueron detenidas por la Policia Española en una redada contra Herrira y los juicios políticos contra 76 personas y 101 herriko taberna empezaban en la Audiencia Nacional. Fue la última vez que estuvimos en Euskal Herria. Hoy, enero, cuatro meses más tarde, nos encontramos con la detención de los mediadores de EPPK (Colectivo de Pres@s Polític@s Vasc@s) y la prohibición de la manifestación a favor de l@s pres@s y refugiad@s politi@s vasc@as. Podemos decir que la situacion no ha cambiado demasiado.

Aunque de hayan dado pasos l@s pres@s polic@s vasc@s son víctimas de una política penitenciaria cruel que vulnera día a día sus derechos mas básicos. También son cientos l@s refugiad@s que se encuentran en diferentes lugaren del mundo y a l@s quienes se les niega el derecho a vivir libres en su pueblo, y una vez más, varias personas son juzgadas por su militancia política.

Al igual que hicimos en octubre, nuevamente nos encontramos en la obligación de denunciar la estrategia represiva que lleva a cabo el Estado Español. Ante la apuesta de un pueblo por la solución y los compromisos adquiridos, el Estado sigue respondiendo con detenciones y prohibiciones. Estos actos demuestran que no quiere la resolucion, no le interesa.

Por eso estamos hoy aquí, en Bilbo. Hacemos nuestra la apuesta por los derechos humanos, la resolución del conflicto y la paz de Euskal Herria y por ello nosotr@s también estaremos en la manifestación de esta tarde. Aun así queremos dar un paso más en nuestro compromiso. Queremos trasladar a nuestros pueblos la realidad que vive Euskal Herria, y dar a conocer de primera mano la represión continua que sufre un pueblo que lucha por su libertad.

Es por ello por lo que l@s integrantes de la red Euskal Herriaren Lagunak (EHL) junto con Askapena, hemos organizado la VIII. Semana Internacional de Solidaridad con Euskal Herria. Esta semana de solidaridad con Euskal Herria se realizará del 4 al 13 de abril bajo el lema: “Errepresioaren aurrean, Gora Euskal Herria Askatuta”. A medida que se acerque la semana, presentaremos las actividades que llevaremos a cabo. Porque la solidaridad y el compromiso entre los pueblos nos hace más fuertes

Gora Euskal Herria Askatuta!

Gora Euskal Herria Internazionalista!

EUSKAL HERRIAREN lagunak

ASKAPENA